# Sarrera

**607 presok** osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 608 preso horiek 84 espetxetan sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik **7soilik daude Euskal Herriko espetxetan**, eta hauek ere 3 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena **Espainiako espetxeetan** aurkitzen da, **443 preso politiko daude 45 espetxetan sakabanatuta. Frantziako espetxeetan 137 preso aurkitzen dira 32 espetxetan sakabanatuta**. Preso bana daude Portugalen, Ipar Irlandan, Eskozian  eta 4 Ingalaterran. Honez gain, 11 preso daude etxean eta preso bat Erroman dago etxean atxilotuta. Preso 1 konfinatua dago Frantzian, Autunen zehazki.

Preso kopuruak gora egin du hil honetan, izan ere, askatasun bakarra egon da eta bost espetxeratze egon dira. Benetan kezkagarria den datua senide eta lagunontzat. Azken hilabeteetan preso kopuruak behera egin baitu hilabetero, ekainean izan ezik. Hala ere, gure ustez honek beste behin erakusten gizartearen gehiengoak itxaropen garaiak bizi dituen honetan, gure errealitatea ez dela inondik inora aldatu erakusten duela; are gehiago, zenbait kasutan okerrera egin duela.

Senide eta lagunok errepideetan gure bizitza arriskatzen jarraitzen dugu. Asteburuoro milaka kilometro eginez, gure senide eta lagunak 40 minutu inguruz ikusteko. Gu ere gure senide eta lagunekin batera zigortzen gaituzte, eta honek ondorio lazgarriak izaten ditu. Horren adibide, hilabete honetan bertan 2012. urtean sakabanaketak eragin duen hamahirugarren istripua izan da. Josu Bravo eta Ines del Rioren hiru lagunek istripu bat pairatu baitzuten bi presoak bisitatzera zihoazela. 40 senide eta lagunek soilik jasan dituzte 2012. urtean sakabanaketak eragindako istripuak, eta kontaezinak dira 23 urte hauetan senide eta lagunok pairatu behar izan ditugu kalte fisiko eta ekonomikoak.

Hau nahikoa ez eta hilabete honetan bertan, senide batek bigarrenez jazarpen egoera bat jasan behar izan duela jakin genuen. Enara Rodrigezen kasu latza salatu eta hamabost egunera, Izaro Arruartek, Gari Arruarteren arrebak eta Ugaitz Errazkinen bikoteak, beste eraso bat jasan zuen, oporretan zegoela. Etengabe gogoraraziz zein den senide bezala bere egoera, eta mehatxu gogorrak eginez. Zoritxarrez guk salatu dugun bigarren kasua da honakoa, eta erantzukizunak eskatzen ditugun bigarren aldia ere izan da. Baina, zoritxarrez ez dugu inongo erantzunik jaso, eta bi kasuetan jasotako erantzun eza benetan tamalgarria izan da.

Etxeratek behin eta berriz salatu izan duen bezala, senide eta lagunok jasan ebhar izaten dugun zigorra bikoitza da. Batetik gure senide eta lagunek aplikatzen dietena, eta guk ere jasan behar izaten duguna. Eta bestetik, bestelako modu batzuetatik (jazarpena, sakabanaketa, miketak...) jasan behar izaten duguna.



# ESPETXEA ETA OSASUNA

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru presoek kalean behar lukete dagokien asistentzia mediku egokia jasotzeko. Gaixo daude, eta euren osasun egoera atzeraezina izan aurretik kaleratuak izan beharko lukete. Fiskaltzak, ordea, ez du hori uste. Eta horren adibide, hilabete honetan zehar Jose Angel Biguriren askatasun eskaera atzera bota izana fiskaltzak. Fiskaltzaren arrazoiak honakoak dira: "bere bizitza arriskuan ez egotea" eta "terrorismoaren helburuetatik eta aktibitatek urrundu ez izanaren seinaleak egotea".

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoez gain, beste hainbat presok ere mota ezberdinetako gaixotasunak pairatzen dituzte. Jaiki Hadik emandako datuen arabera, euskal preso politikoen artean 142 dira gaixotasunen bat dutenak, eta hauetako 40ek gaixotasun psikologikoak dituzte. Guztira iraileko datuen arabera 116 presok gaixotasun fisikoak pairatzen zituzten, hauetatik 22 emakumeak dira eta 94 gizonezkoak. Jaiki Hadi elkarteko medikuak bereziki kezkatuak daude gaixotasun psikologikoak pairatzen dituzten presoengatik, izan ere, gaixotasun mota hauek dituzten gaixoek beharrezkoa dute jarraipen zorrotza egitea, eta espetxean hau lortzea ia ezinezkoa da. Esan bezala, 40 dira gaixotasun psikologikoak dituzten euskal preso politikoak. 40 preso hauetatik 9k asistentzia, tratamendua eta jarraipen zorrotza behar dituzte; beste 31 kasuek, berriz, ez dute hainbeste larritasunik, baina espetxearen eraginez gaixotasun psikotikoak izateko aukerak dituzte.

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru preso politikoak:

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO** (Basauri) - ESPETXEA: Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU** (Iruñea) - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu.

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ** (Iruñea) - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA** (Ondarroa) - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO** (Gasteiz) - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ** (Agurain) - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (**Menagarai) - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS** (Zegama/Elorrio) - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ** (Hernani) - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN** (Iruñea) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES** (Arbizu) - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI** (Orereta) - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE** (Larrabetzu) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.



# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Espainiar estatuak eta frantziar estatuak bizi osorako espetxe zigorra aplikatzen diete gure senide eta lagun euskal preso politikoei. Frantzian, bizi osorako espetxe zigorra legala da. Bizi osorako espetxe zigorrera kondenatuek, epaileek zehaztutako denbora espetxeraturik igaro ostean kaleratzeko aukera dute. Hala ere, euskal preso politikoen kasuan kaleratzeko eskaerak ukatuak izaten dira. Honela, egun badira Frantzian 22 urte espetxean igaro dituzten euskal preso politikoak. Zehazki hiru dira 1990eko apirilean atxilotu zituztenetik espetxean jarraitzen duten euskal presoak:

Jakes Esnal
Frederik Haranburu
Jon Parot

Espainiar estatuak bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina aplikatzen diete gure senide eta lagunei. 2006. urtean Auzitegi Gorenak kaleratu zuen doktrina hau. Erredentzioak espetxealdi limitetik kalkulatu beharrean (30 urte), zigor bakoitzetik kalkulatutakoak izatea dakar 197/2006 doktrinaren aplikazioak. Honela, erredentzioak murriztu beharreko denbora kasu askotan indargabetua geratu delarik.

Guzti hau kontuan hartuta 197/2006 doktrina aplikatu zaien euskal preso politikoek Auzitegi Konstituzionalean helegiteak jarri zituzten. Sei urte luzeren ondoren, 2012ko martxoaren 29an Auzitegi Konstituzionalak 197/2006 doktrinaren aurka jarritako helegiteen inguruan hartutako erabakiaren berri eman zuen. Aztertzen ari ziren 25 helegiteetatik 19 bota zituzten atzera orduan. 4 onartu zituen, eta 3 ez ziren tramitera onartuak izan. Gerora euskal preso gehiagori aplikatu diete 197/2006 doktrina.

2012ko uztailean Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegia 197/2006 doktrinaren aurka agertu zen; zehazki, Ines del Rio presoaren defentsak jarritako helegitearen inguruko ebazpena izan zen. Ebazpen hau Ines del Rioren kasura mugatzen bazen ere, 197/2006 doktrinaren inguruko irakurketa bat egiten zuen, eta guk, senide eta lagunok, hainbestetan salatu dugun bizi osorako espetxe zigorraren aurka egiten zuen bertan. Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak azaldu zuen 197/2006 doktrina aplikatuz presoen eskubideak urratzen ari direla, eta horregatik berehala desagertua izan behar duela.

2012ko irailaren 24an, ELDH-ek, Demokrazia eta Giza Eskubideen Aldeko Europar Legelarien Elkarteak 197/2006 doktrinak zein gaixo larri dauden euskal presoak kartzelan edukitzeak Espainiako eta nazioarteko legediak bortxatzen dituztela ohartarazi zuen. Honela, Espainiako Go-

bernuari eta bere erakundeei 197/2006 doktrina aplikatuta duten eta gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak askatzeko dei egin dio. Bestalde, Europako Giza Eskubideen Auzitegiak Ines del Rio presoaren auziaz emandako ebazpenarekin bat egiten dutela ere adierazi zuten.

Urriaren 4an, Espainiako gobernuak helegitea jarri zuen, Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak Ines del Rioren kasuan emandako ebazpenaren aurka. Urriaren 23an, Estrasburgok helegitea tramitera onartu zuen. Behin onartuta, ez dago eperik ezarrita erantzuna emateko. Urriaren 15ean, berriz, Estrasburgon 20 kasu gehiago sartu ziren.

| **Izen-abizenak** | **Espetxea** | **Espetxean zenbat urte?** | **Irteera data** | **Irteera data doktrina aplikatu ondoren** |
|---|---|---|---|---|
| JON AGINAGALDE URRESTARAZU | Granada | 28 | 10/07/04 | 2014 |
| IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL | A Lama | 21 | 10/04/15 | 2021 |
| JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE | Cordoba | 23 | 09/03/05 | 2019 |
| JOSEBA ARTOLA IBARRETXE | Daroca | 26 | 06/05/18 | 2016 |
| LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI | Zuera | 24 | 07/10/08 | 2018 |
| SANTOS BERGANZA ZENDEGI | Amurrio | 23 | 11/06/15 | 2019 |
| JOSE ANGEL BIGURI CAMINO | Martutene | 23 | 10/06/09 | 2019 |
| JESUS BOLLADA ALVAREZ | Albocasser | 25 | 06/05/20 | 2017 |
| FERNANDO DEL OLMO VEGA | Almeria | 21 | 12/02/01 | 2020 |
| INES DEL RIO PRADA | Curtis | 25 | 08/07/05 | 2017 |
| JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI | Topas | 21 | 12/02/19 | 2021 |
| JOSU Dz. DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU | Topas | 26 | 09/10/15 | 2016 |
| IÑAKI ERRO ZAZU | Almeria | 25 | 10/05/16 | 2017 |
| JOSE ETXEBERRIA PASCUAL | Daroca | 21 | 10/03/26 | 2021 |
| ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES | Villabona | 26 | 11/05/27 | 2016 |
| IÑAKI Fdz DE LARRINOA P. DE LUKO | Puerto I | 23 | 08/10/01 | 2019 |
| NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ | Herrera d | 25 | 09/05/29 | 2017 |
| JUAN MARI GABIRONDO AGOTE | A Lama | 26 | 07/12/01 | 2016 |
| ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA | Puerto I | 27 | 10/02/02 | 2020 |
| XABIER GOLDARAZ ALDAIA | Zuera | 20 | 11/09/17 | 2022 |
| PATXI GOMEZ LOPEZ | Basauri | 21 | 09/04/29 | 2018 |
| RAUL IBAÑEZ DIEZ | Dueñas | 21 | 10/10/08 | 2021 |
| JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA | Albocasser | 26 | 09/04/02 | 2016 |
| GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA | Martutene | 23 | 10/08/11 | 2019 |
| ANTXON LOPEZ RUIZ | Puerto I | 25 | 06/07/24 | 2017 |
| FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO | Herrera | 28 | 08/02/17 | 2014 |

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| JOSE RAMON MARTINEZ | Logroño | 27 | 09/01/01 | 2020 |
| JABI MARTINEZ IZAGIRRE | Jaen | 20 | 10/09/22 | 2022 |
| JESUS MARI MENDINUETA FLORES | Zuera | 21 | 11/05/04 | 2021 |
| INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA | Algeciras | 25 | 08/11/08 | 2017 |
| PEIO ODRIOZOLA AGIRRE | Zuera | 24 | 08/07/02 | 2018 |
| IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA | Zuera | 26 | 08/12/17 | 2016 |
| IMMA PACHO MARTIN | Málaga | 21 | 08/03/11 | 2021 |
| JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ | Algeciras | 28 | 09/03/01 | 2014 |
| IÑAKI PUJANA ALBERDI | Villena | 25 | 09/02/23 | 2021 |
| KEPA REZABAL ZURUTUZA | Monterroso | 25 | 06/12/30 | 2016 |
| MAITANE SAGASTUME ARRIETA | Curtis | 21 | 09/07/26 | 2021 |
| JOKIN SANCHO BIURRUN | Zuera | 23 | 09/12/08 | 2019 |
| KEPA SOLANA ARRONDO | Bonxe | 21 | 09/10/10 | 2021 |
| TXOMIN TROITIÑO ARRANZ | Curtis | 25 | 06/05/05 | 2017 |
| ANTTON TROITIÑO ARRANZ | Belmarsh | 25 | 11/02/04 | 2017 |
| MITXEL TURRIENTES RAMIREZ | Herrera | 26 | 09/04/10 | 2016 |
| JOKIN URAIN LARRAÑAGA | Herrera | 26 | 09/08/29 | 2016 |
| IÑAKI URDIAIN ZIRIZA | Valencia III | 23 | 09/10/09 | 2019 |
| JON ANDER URKIZU ORMAZABAL | Teruel | 26 | 07/07/22 | 2016 |
| MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA | Granada | 21 | 09/08/27 | 2021 |
| JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA | Puerto III | 27 | 08/04/11 | 2015 |
| GONZALO RODRIGUEZ CORDERO | Herrera | 19 | 13/07/11 | 2023 |
| IÑAKI ZUGADI GARCIA | Murcia II | 20 | 12/04/30 | 2022 |
| JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA | Monterroso | 21 | 12/04/30 | 2021 |
| JOSUNE ONAINDIA SUSAETA | Murcia II | 20 | 12/06/09 | 2022 |
| JOSU AMANTES ARNAIZ | Bonxe | 20 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| IÑAKI ARAKAMA MENDIA | Sevilla II | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA | Zuera | 25 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA | Puerto III | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| OSKAR CADENAS LORENTE | Murcia II | 16 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO | Mansilla | 17 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| MANU GONZALEZ RODRIGUEZ | Sevilla II | 23 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |

| Izen-abizenak | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| UNAI PAROT NAVARRO | Puerto III | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| LURDES TXURRUKA MADINABEITIA | Huelva | 18 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI | Zuera | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| ASIER ORMAZABAL LIZEAGA | Teruel | 15 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| GERMAN RUBENACH ROIZ | Puerto III | 22 | Finkatu gabe | Finkatu gabe |
| ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA | Curtis | 22 | 16/11/26 | 2026 |
| GABRIEL ZABALA ERASUN | Villabona | 19 | 13/09/27 | 2023 |

Zerrenda honetan agertzen diren 65 euskal preso politiko hauez gain, beste 20 presori ere aplikatu zaie 197/2006 doktrina. Azken 20 hauek, ordea, arrazoi ezberdinengatik, doktrinaren zigorra guztiz beteta ala bete gabe kalean aurkitzen dira egun. Beraz, kontutan hartzekoa da gure 85 senideri aplikatu dietela bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina.



# ZIGORRAREN 2/3 ETA 3/4 BETETA DITUZTEN PRESOAK

Egun 143 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 143 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

## ESTATU ESPAÑOLA

1. ABAD SAN PEDRO ENDIKA
2. AGIRRE LETE JUAN LUIS
3. ALMARAZ LARRAÑAGA AGUSTIN
4. ALONSO ALVAREZ RAUL
5. ALONSO CURIECES ANUNTZI
6. ALONSO RUBIO IÑAKI
7. APARICIO BENITO JON KOLDO
8. APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
9. ARANBURU MUGURUZA XABIER
10. ARISTI ETXAIDE PATXI
11. ARKAUZ ARANA JOSU
12. ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
13. ARREGI IMAZ XABIER
14. ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
15. ARRIETA ISMAEL
16. ASENSIO MILLAN PAUL
17. ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
18. ASKASIBAR GARITANO MIKEL
19. BALANZATEGI AGIRRE XABIER
20. BALERDI IBARGUREN XABIER
21. BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
22. BEASKOA RODRIGEZ JON
23. BEAUMONT BARBERENA JOSU
24. BELLON BLANCO ARKAITZ
25. BELOKI RESA ELENA
26. BENAITO VILLAGARCIA MIGUEL A.
27. BERISTAIN URIZARBARRENA, IKER
28. BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
29. BETOLAZA VILAGRASA GORKA
30. BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
31. BRAVO MAESTROJUAN JOSU
32. CABELLO PEREZ ANDONI
33. CAÑAS CARTON IÑAKI
34. CASTRO SARRIEGI ALFONSO
35. COLOMA UGARTEMENDIA ASIER
36. CORTA CARRION MIKEL
37. DORRONSORO MALAXETXEBARRIA J.
38. EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
39. ERNAGA ESNOZ JOSEPA
40. ERRAZTI ELORZA JOKIN
41. ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
42. ESNAL JUANTXU
43. ESPARZA ORTEGA JOSEBA
44. ESTONBA ITURRIZA ARATZ
45. ETXEANDIA MEABE JOSE MIGUEL
46. ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
47. FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
48. FERNANDEZ BERNALES JULEN
49. GABIOLA GOIOGANA ANDONI
50. GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
51. GAÑAN RAMIRO GAIZKA
52. GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
53. GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
54. GARCIA MIJANGOS JOSE
55. GARCIA RAZKIN SERGIO
56. GARCIA SERTUTXA GORKA

57. GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
58. GOIENETXE ALONSO IÑAKI
59. GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
60. GONZALEZ PAVON JOSEBA
61. GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
62. GONZALO CASAL IÑAKI
63. GRAMONT DABID
64. GUEMES OIARBIDE ITXASO
65. GUNDIN MAGUREGI PATXI
66. HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
67. HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
68. IBARRA IZURIETA BIGARREN
69. IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL
70. IRASTORZA OTEGI AINHOA
71. JUARISTI ARRIETA XABIN
72. LARRINAGA MARTIN JULEN
73. LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
74. LASA MITXELENA JUAN LORENZO
75. LEGAZ IRURETA ARMANDO
76. LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
77. LESENDE ALDEKOA TXOMIN
78. LIZARRALDE PALACIOS ANA
79. LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
80. LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE R.
81. MAJARENAS IBARRETA SARA
82. MARKEZ DEL FRESNO KEPA
83. MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
84. OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
85. OLAIZ RODRIGUEZ JORJE
86. OLANO OLANO JUAN MARIA
87. OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
88. ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
89. OSTOLAZA IKARAN ENEKO
90. OTAZUA URRESTI IÑIGO
91. PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
92. PEREZ DE ANUCITA URKIJO EDUARDO
93. PRIETO JURADO SEBASTIAN
94. ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
95. RUIZ JASO ZIGOR
96. SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
97. SAENZ OLARRA BALBINO
98. SAEZ ARRIETA ARKAITZ
99. SALEGI GARCIA OROITZ
100. SALUTREGI MENTXAKA JABIER
101. SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
102. SOLA TORRES JOSE DOMINGO
103. TAPIA ZULAIKA ASIER
104. TERRONES ARRETE JAGOBA
105. TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
106. TODA IGLESIA TERESA
107. TRENOR DICENTA KARLOS
108. TXIMENO INZA XABIER
109. UGALDE ZUBIRI ANDONI
110. UGARTE VILLAR XABIER
111. URIBE NAVARRO RAMON
112. URIZAR DE PAZ GERMAN
113. URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
114. URRA GURIDI KEPA
115. VARGAS OLASOLO MIKEL
116. VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
117. ZABARTE ARREGI JESUS MARI
118. ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
119. ZELARAIN ERRAZTI JULEN
120. ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
121. ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE Z.
122. ZIGANDA SARRATEA JOSU
123. ZUBIA URRUTIA IKER
124. ZUBIAGA LAZKANO XEBER
125. ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
126. ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA

# ESTATU FRANTSESA

1. FREDERIK HARANBURU
2. INIGO ELIZEGI
3. JACKES ESNAL
4. JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
5. AITOR KORTAZAR
6. MAITE JUARROS
7. JON KIRRU OTXOANTESANA
8. JON PAROT
9. RAMUNTXO SAGARZAZU.
10. BEÑAT SANSEBASTIAN.
11. MARINA BERNADO BONADA
12. MATTIN OLZOMENDI.
13. GALDER CORNAGO
14. ITXASO LEGORBURU
15. IBAI SUESKUN



# ISOLAMENDU ETA BAKARTZEA

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan Espainiako eta Frantziako espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

**Euskal Herria**

Txus Martin (Zaballa)
Gotzone Lopez de Luzuriaga (Martutene)
Jose Angel Biguri (Martutene)

**Espainiar estatua**

Sara Majarenas (León)
Aurore Martin (Soto del Real)

**Frantziar estatua**

Marian Aramendi (Joux la Ville)
Julen Eizagirre (Joux la Ville)
Mattin Olzomendi (Uzerche)
Ibai Sueskun (Tarascon)
Eneko Bilbao (Muret Seysses)

Isolamenduarekin eta bakartzearekin lotuta arazoak izan dituzte hilabete honetan Fresnes eta Fleuryko espetxeetan:

**Izaskun Lesaka eta Joseba Iturbide** presoak bakarturik aurkitzen ziren, Fresnes eta Fleuryko espetxeetan, hurrenez hurren. Pariseko epailearen aginduz, Lesaka eta Iturbide bakarturik (hau da, beste kiderik gabe) izan zituzten espetxeratu zituztenetik.

Fresnesen preso aurkitzen diren euskal preso politiko guztiek (gizonezkoek eta emakumezkoek), euren elkartasuna adierazi zieten Izaskun Lesakari, azaroaren 5ean. Ondorioz, gizonezkoak mitardean (zigor ziegetan) aurkitzen dira, eta emakumezkoek mitardean lekurik ez zegoenez ziegetan dituzte konfinaturik.



# GERTAERA LARRIAK

## Senideekiko erasoak

Izaro Arruartek azaroaren 21ean egindako prentsaurrekoan emandako testigantza senideok bizi dugun jazarpenaren erakusle da. Bertan salatu zuen 2012ko urriaren 25ean, Tenerife irlako Puerto de la Cruz herrian oporretan zegoela, korri egitera irten zela, eta bakarrik zihoala, herritik nahiko baztertuta dagoen leku batean, bi gizonezko agertu zitzaizkiola aurrez aurre. Polizia plakak erakutsi zizkioten, eta momentu oro bere izenez zuzendu zitzaizkion. Berarekin zeudela etengabe mehatxatu zuten, atxilotuko zutela eta bere aurkako probak zituztela esanez. Gainera, erreferentzia  egiten zieten bai bere anaia den Gari Arruarteri eta baita bere bikote den Ugaitz Errazkini ere; biak preso. Une batean, bere amari ere egin zioten erreferentzia, semea eta suhia espetxean izanda nahikoa zuela esanaz, eta alaba ere preso izateak eragingo liokeena adieraziz.

Euskal Herrian bizitzen ari den prozesuari buruz ere galdetu zioten, bere iritzia jakin nahi zutela esanez. Gainera, bere iritziak balio handia zuela ere aipatu zioten. Izarok, ordea, beraiekin zer hitz eginik ez zuela erantzun zien Izarok. 24 ordu eman zizkioten pentsatzeko, hurrengo egunean leku eta ordu berean elkartuko zirela esanez.  15-20 minutuz izan zuten Izaro galderak eginez. Azkenean, joaten utzi zioten eta hurrengo egunean Izaro ez zen leku berdinera itzuli.

Gertaera hauek direla eta azaroaren 5ean Izaro Arruartek salaketa bat ipini zuen Donostiako Epaitegian. Etxerat elkarteak, berriz, publikoki salatu zuen senideok jasan behar izaten dugun jazarpena. Eta Enara Rodrigezen eta Izaro Arruarteren kasu argitzeko eta arduradunak bilatzeko exijitu zuen.

## Sakabanaketak eragindako istripuak

Ines del Rio eta Josu Bravo presoen hiru lagunek auto istripua izan zuten, azaroaren 17an, Ines del Rio bisitatzera zihoazela. Istripua Leon inguruan gertatu zen. Euria hasi eta errepidea irristakor jarri zen, ondorioz, autoaren kontrola galdu zuten eta erdibitzailearen aurka jo zuten. Azkenean, errepidearen beste aldera pasa ziren, arroila baten bazterreraino iritsi arte. Kotxean zihoazen hiru lagunek ez zuten kalte fisikorik izan, baina autoak kalte handiak ditu. Istripuaren ondorioz, hiru lagunek ezin izan zuten burutu Ines del Riorekin A Coruñako Curtis espetxean zuten bisita, eta ezta hurrengo egunean A Laman Josu Bravorekin zuten bisita ere. Hau dispertsio politikak 2012. urtean eragin duen hamahirugarren istripua da.

## Zigorren luzapena

Pello Zelarain, Villena espetxean (Alacanten) aurkitzen den preso villabonatarrak aske behar lukeen arren, espetxean mantentzen dute legez kanpo. Zelarainek 18 urte daramatza preso, eta 19 urteko espetxe zigorra ezarria du. Presoek izaten dituzten erredentzio edo murrizketak aplikatuta, bere espetxe zigorra aspaldi bete zuen Pellok. Etxean behar luke 2011 urtearen hasieratik. Zoritxarrez, murrizketa hauek aplikatzeko hainbat oztopo jarri dizkiete Pello eta bere abokatuei. Baina, gora-behera askoren ostean, duela bi urtetik egindako eskaera bati esker, 2012ko uztailetik Pellori eta bere abokatuei arrazoia ematen zien auto bat dute esku artean. Ondorioz, auto horrek dioen bezala Pellok berehala aske beharko luke, eta hala ere, espetxean mantentzen dute.



# BESTELAKO GERTAERAK

**Espainiar estatua**

**Algeciras**

12 hilabetetan 5 aldiz aldatu dituzte moduluz. Azken aldaketan, ziegak miatu zizkietean. Eta Unai Fanori segurtasun arduradunak egindako miaketa bereziki zorrotza izan zen.
Gutunak bidaltzeko eta jasotzeko hainbat muga ezarri dizkiete.
Urriaren 6an, Mikel Arrietaren ama miatu zuten aurrez aurreko bisitan sartu aurretik; orain arte ez zituzten pertsona helduak miatzen.

**Foncalent**

Espetxe honetako emakumeek miaketa gogorra jasan zuten.

**Granada**

Duela hilabete batzuk ordenagailuak kendu zizkieten. Hiru kidek kexa bat sartu zuten, baina, espetxeari eman diote arrazoia; beraz, ez dute ordenagailurik izango.

Miaketen ondorioz, aurrez aurreko bisita bat galdu dutenez, itxialdi bat burutu zuten protesta moduan. Hau gertatzen den bakoitzean burutzen dute itxialdia.

**Puerto III**

Gradu bat ikasten ari direnek, aurretik beste gradu edo karrera bat egina badute, matrikula ordaindu beharko dute.

Gutun guztiak (sarrera-irteera) 15 egunez erretenituko dizkietela jakinarazi diete.

**Sevilla**

Aurrez aurreko bisitetan argazkiak ateratzeko baimena eman diete. Horretarako demandaderoan erabili eta botatzeko kamara bat erosi behar dute. Bisitan argazkiak atera ostean, berriro ere, argazkiak paperean ateratzeko demandaderora jo beharko dute.

**Soria**

Iñaki Loizagaren bikoteak eta alabak aurrez aurreko bisita galdu zuten, ukimenezko miaketara ukatu ondoren.

**Villena**
Gara egunkaria jasotzeko arazoak dituzte. Espetxeak errua egunkariari botatzen dio.

## Frantziar estatua

**Lyon Corbas**
Hauteskundeetan bertan aurkitzen den euskal preso politiko bakarrak lortu zuen bozkatzea. Besteek tramiteak garaiz egin bazituzten ere, ez zuten bozkatu, kontsulak ezin izan baitzuen espetxean sartu.

**Poitiers**
Senide batzuk bisitarik gabe geratu ziren espetxearen erruz. Gainera, hasiera batean senideei bota zioten errua.



# Askatasunak, espetxeratzeak eta lekualdatzeak

## Askatasunak

**Jean Marie Saint Pée** (Eiheralarre), azaroaren 14an. Zigorra beteta.

## Espetxeratzeak

**Izaskun Lesaka** (Burlata), urriaren 28an. Maconen atxilotua izan zen, eta egun Poitiers Vivonnen dago espetxeratua.

**Joseba Iturbide** (Lesaka), urriaren 28an. Maconen atxilotua izan zen, eta egun Fleuryn dago espetxeratua.

**Aurore Martin** (Maule), azaroaren 1ean. Maulen atxilotu zuten, eta espainiaratu egin zuten. Egun Soto del Real espetxean aurkitzen da.

**Iñaki Imaz** (Donostia), azaroaren 15ean. Hendaian atxilotu zuten, eta espainiaratu egin zuten. Egun Soto del Real espetxean aurkitzen da.

**Raul Fuentes** (Bilbo), azaroaren 16an. Liverpoolen atxilotu zuten, eta Belmarshen espetxeratu zuten.

## Lekualdatzeak

**DESTINU ALDAKETAK**

**Espainiar estatua**

**Juan Ignacio Otaño** (Andoain), Soto del Real-etik Estremera-ra.
**Maialen Zuazo** (Bilbo), Estremera-tik Soto del Real-era.
**Igor Urresti** (Ondarroa), Soto del Real-etik Estremera-ra.
**Imanol Gonzalez** (Balmaseda), Soto del Real-etik Alcala Meco-ra.
**Iker Olabarrieta** (Barakaldo), Caceres-etik Huelva-ra.
**Juan Mari Mujika** (Amezketa), Soto del Real-etik Valencia III-ra.
**Oier Andueza** (Durango), Aranjuez-etik Murcia II-ra.

**Eneko Gogeaskoetxea** (Gernika), Soto del Real-etik Alcala Meco-ra.

**Frantziar estatua**

**Eneko Bilbao** (Bilbo), Sud Francilien-etik Muret Seysses-era.
**Juan Cruz Maiz**a (Etxarri-Aranaz), La Sante-tik Saint Maur-era.
**Ibai Mateo Esparza** (Iruñea), Fresnes-etik Poitiers Vivonne-ra.
**Izaskun Lesaka** (Iruñea), Fresnes-etik Poitiers Vivonne-ra.
**Alaitz Aramendi** (Bilbo), Fresnes-etik Nantes-era.
**Saioa Sanchez** (Barakaldo), Poitiers Vivonne-tik Nantes-era.
**Gorka Azpitarte** (Eskoriatza), Poitiers Vivonne-etik Nantes-era.
**Alberto Lopez de la Calle** (Gasteiz), Fleury-tik Reau Sud Francilien-era.
**Oier Ardanaz Armendariz (**Iruñea), Fleury-tik Nantes-era.

**DILIGENTZIAK**

**Espainiar estatua**

**Dani Pastor** (Bilbo), Aranjuez-etik Puerto III-ra.
**Aitor Fresnedo (**Portugalete), Jaen II-tik Albocasser-era.
**Egoitz Coto** (Barakaldo), Granada-tik Zaballa-ra.

**Frantziar estatua**

**Marixol Iparragirre** (Eskoriatza), Lyon Corbas-etik Fresnes-era.
**Mikel Albisu** (Donostia), Lyon Corbas-etik Fresnes-era.